# Sarrera

608 presok osatzen dute egun Euskal Preso Politikoen Kolektiboa. 608 preso horiek 86 espetxetan sakabanatuta daude. Preso guzti hauetatik 8 soilik daude Euskal Herriko espetxetan, eta hauek ere 3 espetxetan sakabanatuta daude. Preso kopururik handiena Espainiako espetxeetan aurkitzen da, 445 preso politiko daude 45 espetxetan sakabanatuta. Frantziako espetxeetan 135 preso aurkitzen dira 33 espetxetan sakabanatuta. Preso bana daude Portugalen, Ipar Irlandan, Eskozian eta Mexikon, eta 3 Ingalaterran. Honez gain, 11 preso daude etxean eta preso bat Erroman dago etxean atxilotuta. Preso 1 konfinatua dago Frantzian, Autunen zehazki.

Uda nahasi bat igaro ostean, badirudi udazkena lasaiago hasi dela orokorrean. Nahiz eta euskal preso politikoen senideon eta lagunon egoera ez den aldatu. Gure senideek etxetik milaka kilometrotara jarraitzen duten, euren eskubideak urratuak izaten jarraitzen dute eta geure eskubideak ere ez dira errespetatzen.

Sakabanaketak beste istripu bat eragin du irailean ere. Senideoi ezartzen zaigun zigor honek bere betebeharra burutzen jarraitzen du, eta guk asteburuoro asteburuoro gure bizitzak arriskuan jartzen jarraitu behar izaten dugu, gure senideak eta lagunak ikusteko. Etengabe aipatzen ditugu honek dituen ondorio fisiko, sikologiko eta ekonomiak. Benetan ezin da hitzekin azaldu zein ondorio dituen gugan sakabanaketak. Ondorio hauek ez dira aldatuko, sakabanaketa amaitzen den arte, eta gure senide eta lagunak gure ondoan izaten ditugun arte. Izan ere, guk asteburuoro milaka kilometro egiten eta gure bizitza arriskuan jartzen jarraituko dugu; inoiz ez baititugu gure senideak bakarrik utziko.

Gure senideen eta lagunen egoera ez da aldatu. Etengabe euren eskubideak urratzen jarraitzen dute, eta horrez gain espetxean ematen duten denboraldian hainbat eraso, probokazio eta mehatxu jasan behar izaten dituzte. Hauen adibide, Cordobako espetxean aurkitzen diren Oskar Calabozo, Jose Mari Etxeberria "Goierri" eta Jon Urretabizkaiak bizi izan dutena hil honetan. Izan ere, jada beste bi euskal preso politiko eraso dituen preso sozial bat euren moduluan. Etengabe bizi duten probokazioaren eta mehatxuaren islada da honakoa.

Gauzak honela, behin eta berriz exijitu dugun eskubideen errespetua exijitxen jarraituko dugu. Bai gure senide eta lagunena eta baita gurea ere. Honela, gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoak askatzea, bizi osorako espetxe zigorrarekin amaitzea eta zigorraren 2/3 eta 3/4 beteta dituzten presoak askatzea ere exijitzen dugu.



# 1. ESPETXEA ETA OSASUNA

Irailaren 12an iritsi zen azkenik Iosu Uribetxebarriaren baldintzapeko askatasuna. Uztailaren 20an Iosu Uribetxebarria ospitaleratua izan zela jakin genuenetik bere askatasunera, bide luze bat egin behar izan dugu. Sufrimenduz eta etsipenez betetakoa. Izan ere, Iosu egoerarik muturrenekoenera eraman dute, urteetan zehar eskatu den bere baldintzapeko askatasuna gauzatu aurretik. Egun Iosu oso ahul aurkitzen da, eta horregatik ospitalean jarraitu beharko du denbora batez. Egoera honenbeste luzatzeak eta erabakia hain berandu hartzeak helburu zehatz bat du: mendekuz betetako espetxe politika azkenetaraino eramatea. Eta horrek, gure senideen eskubideak zapaltzea eskatzen badu, horixe egingo dute.

Egoera hau ezin da onartu, eta ezin da errepikatu. Udan bizi izan diren gora-beherak benetan justifika ezinak dira, eta euskal preso politikoon senide eta lagunek itzulinguru hauek samin eta kezka handiz bizi izan ditugu. Izan ere, gure beste hamahiru senide eta lagunek gaixotasun larri eta sendaezinak izan arren, preso jarraitzen dute. Esan bezala, Iosuren egoera errepika ez dadin ezinbestekoa da gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten beste hamahiru presoak ere etxean izatea.

Iosu Uribetxebarria, Txus Martin, Gotzone Lopez de Luzuriaga, Josetxo Arizkuren, Inmakulada Berriozabal, Iñaki Etxeberria, Jesus Mª Mendinueta, Jose Angel Biguri, Jose Migel Etxeandia, Iñaki Erro, Gari Arruarte, Aitzol Gogorza, Jose Ramon Lopez de Abetxuko eta Isidro Garalde ez dira hamalau pertsonen izen soilak. Gure hamalau senide dira eta hitzak albo batera utzita, berehala gurekin batera, bizirik etxean izan nahi ditugu!

## Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten hamahiru preso politikoak:

**Jesus Mª MARTIN HERNANDO** (Basauri) - ESPETXEA: Zaballa. 1960. urtean jaioa. 2002an atxilotua. Nahasmen eskizo-afektiboa delirio osagarriarekin.

**Iñaki ERRO ZAZU** (Iruñea) - ESPETXEA: Almeria. 1960an jaioa. 1987an atxilotua. SCASEST erako Kardiopatia iskemiko larria. Bihotz kateterismoa: 3 stent ezarria ditu.

**Josetxo ARIZKUREN RUIZ** (Iruñea) - ESPETXEA: A Lama (A Coruña). 1958an jaioa. 1999an atxilotua. Kardiopatia iskemiko larria. Kateterismoa: Stent hodi batean.

**Isidro GARALDE BEDIALAUNETA** (Ondarroa) - ESPETXEA: Puerto I (Cádiz). 1951ean jaioa. 1985ean atxilotua. Kardiopatia iskemikoa- (SCASEST erakoa) Prostatako hiperplasia benignoa, Kataratak.

**Jose Ramon LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO** (Gasteiz) - ESPETXEA: Villabona (Asturias). 1949an jaioa. 1989an atxilotua. Bradikardia sintomatikoa. Fibrilazio aurikularra, Prostatako adenoma.

**Gotzone LOPEZ DE LUZURIAGA FERNANDEZ** (Agurain) - ESPETXEA: Martutene. 1959an jaioa. 1989an atxilotua. Bularreko minbizia.

**Jose Angel BIGURI CAMINO (**Menagarai) - ESPETXEA: Martutene. 1955ean jaioa. 1989an atxilotua. Prostatako adenokartzinoma (minbizia).

**Inmaculada BERRIOZABAL BERNAS** (Zegama/Elorrio) - ESPETXEA: A Lama (Pontevedra). 1951ean jaioa. 2009an atxilotua. Psoriasi artropatia, Diabetesa (DM-II), Diabetes oina, hipertentsioa, azkazaletako psoriasia, Asma bronkiala, belaunetako protesia.

**Gari ARRUARTE SANTA CRUZ** (Hernani) - ESPETXEA: Almeria. 1980an jaioa. 2003an atxilotua. Espondilitisa.

**Iñaki ETXEBERRIA MARTIN** (Iruñea) - ESPETXEA: Topas (Salamanca). 1964ean jaioa. 1996an atxilotua. Eboluzio luzeko Miopia Magnoa. Eskuineko begiko erretina hemorragia, Ikusmen zorroztasunaren galera, ezkerreko begiko afaquia.

**Jesus Mª MENDINUETA FLORES** (Arbizu) - ESPETXEA: Zuera (Zaragoza). 1968an jaioa. 1991ean atxilotua. Gaixotasun erreumatikoa, afektazio sistemikoarekin. Hori dela eta, aurrealdeko uveitisa . Bi disko-eten (lepoaldean eta gerrialdean, lepoko mina eta ziatikarekin) . Sinupatia aldi errepikariak.

**Aitzol GOGORZA OTAEGI** (Orereta) - ESPETXEA: Basauri. 1975ean jaioa. 1999an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa.

**Jose Miguel ETXEANDIA MEABE** (Larrabetzu) - ESPETXEA: Topas (Salamanca). 1960an jaioa. 2003an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa, Hepatitis C.



# 2. BIZI OSORAKO ESPETXE ZIGORRA

Espainiar estatuak eta frantziar estatuak bizi osorako espetxe zigorra aplikatzen diete gure senide eta lagun euskal preso politikoei. Frantzian, bizi osorako espetxe zigorra legala da. Bizi osorako espetxe zigorrera kondenatuek, epaileek zehaztutako denbora espetxeraturik igaro ostean kaleratzeko aukera dute. Hala ere, euskal preso politikoen kasuan kaleratzeko eskaerak ukatuak izaten dira. Honela, egun badira Frantzian 22 urte espetxean igaro dituzten euskal preso politikoak. Zehazki hiru dira 1990eko apirilean atxilotu zituztenetik espetxean jarraitzen duten euskal presoak:

· Jakes Esnal
· Frederik Haranburu
· Jon Parot

Espainiar estatuak bizi osorako espetxe zigorra ahalbidetzen duen 197/2006 doktrina aplikatzen diete gure senide eta lagunei. 2006. urtean Auzitegi Gorenak kaleratu zuen doktrina hau. Erredentzioak espetxealdi limitetik kalkulatu beharrean (30 urte), zigor bakoitzetik kalkulatutakoak izatea dakar 197/2006 doktrinaren aplikazioak. Honela, erredentzioak murriztu beharreko denbora kasu askotan indargabetua geratu delarik.

Guzti hau kontuan hartuta 197/2006 doktrina aplikatu zaien euskal preso politikoek Auzitegi Konstituzionalean helegiteak jarri zituzten. Sei urte luzeren ondoren, 2012ko martxoaren 29an Auzitegi Konstituzionalak 197/2006 doktrinaren aurka jarritako helegiteen inguruan hartutako erabakiaren berri eman zuen. Aztertzen ari ziren 25 helegiteetatik 19 bota zituzten atzera orduan. 4 onartu zituen, eta 3 ez ziren tramitera onartuak izan. Gerora euskal preso gehiagori aplikatu diete 197/2006 doktrina.

2012ko uztailean Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegia 197/2006 doktrinaren aurka agertu zen; zehazki, Ines del Rio presoaren defentsak jarritako helegitearen inguruko ebazpena izan zen. Ebazpen hau Ines del Rioren kasura mugatzen bazen ere, 197/2006 doktrinaren inguruko irakurketa bat egiten zuen, eta guk, senide eta lagunok, hainbestetan salatu dugun bizi osorako espetxe zigorraren aurka egiten zuen bertan. Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegiak azaldu zuen 197/2006 doktrina aplikatuz presoen eskubideak urratzen ari direla, eta horregatik berehala desagertua izan behar duela.

2012ko irailaren 24an, ELDH-ek, Demokrazia eta Giza Eskubideen Aldeko Europar Legelarien Elkarteak 197/2006 doktrinak zein gaixo larri dauden euskal presoak kartzelan edukitzeak Espainiako eta nazioarteko legediak bortxatzen dituztela ohartarazi zuen.

Honela, Espainiako Gobernuari eta bere erakundeei 197/2006 doktrina aplikatuta duten eta gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoak askatzeko dei egin dio. Bestalde, Europako Giza Eskubideen Auzitegiak Ines del Rio presoaren auziaz emandako ebazpenarekin bat egiten dutela ere adierazi zuten.

| Izen-abizenak | Espetxea | Espetxean zenbat urte? | Irteera data | Irteera data doktrina aplikatu ondoren |
|---|---|---|---|---|
| OSCAR ABAD PALACIOS | Topas | 21 | 10/12/31 | 2021 |
| JON AGINAGALDE URRESTARAZU | Granada | 28 | 10/07/04 | 2014 |
| IÑIGO AKAITURRI IRAZABAL | A Lama | 21 | 10/04/15 | 2021 |
| JUAN CARLOS ARRUTI AIZPITARTE | Cordoba | 23 | 09/03/05 | 2019 |
| JOSEBA ARTOLA IBARRETXE | Daroca | 26 | 06/05/18 | 2016 |
| LUIS MARI AZKARGORTA BELATEGI | Zuera | 24 | 07/10/08 | 2018 |
| SANTOS BERGANZA ZENDEGI | Amurrio | 23 | 11/06/15 | 2019 |
| JOSE ANGEL BIGURI CAMINO | Martutene | 23 | 10/06/09 | 2019 |
| JESUS BOLLADA ALVAREZ | Albocasser | 25 | 06/05/20 | 2017 |
| FERNANDO DEL OLMO VEGA | Almeria | 21 | 12/02/01 | 2020 |
| INES DEL RIO PRADA | Curtis | 25 | 08/07/05 | 2017 |
| JUAN IGNACIO DELGADO GOÑI | Topas | 21 | 12/02/19 | 2021 |
| JOSU Dz. DE HEREDIA RUIZ DE ARBULU | Topas | 26 | 09/10/15 | 2016 |
| IÑAKI ERRO ZAZU | Almeria | 25 | 10/05/16 | 2017 |
| JOSE ETXEBERRIA PASCUAL | Daroca | 21 | 10/03/26 | 2021 |
| ELIAS FERNANDEZ CASTAÑARES | Villabona | 26 | 11/05/27 | 2016 |
| IÑAKI Fdz DE LARRINOA P. DE LUKO | Puerto I | 23 | 08/10/01 | 2019 |
| NICOLAS FRANCISCO RODRIGUEZ | Herrera d | 25 | 09/05/29 | 2017 |
| JUAN MARI GABIRONDO AGOTE | A Lama | 26 | 07/12/01 | 2016 |
| ISIDRO GARALDE BEDIALAUNETA | Puerto I | 27 | 10/02/02 | 2020 |
| XABIER GOLDARAZ ALDAIA | Zuera | 20 | 11/09/17 | 2022 |
| PATXI GOMEZ LOPEZ | Basauri | 21 | 09/04/29 | 2018 |
| RAUL IBAÑEZ DIEZ | Dueñas | 21 | 10/10/08 | 2021 |
| JUAN JOSE LEGORBURU GEREDIAGA | Albocasser | 26 | 09/04/02 | 2016 |
| GOTZONE LOPEZ DE LUZURIAGA | Martutene | 23 | 10/08/11 | 2019 |
| ANTXON LOPEZ RUIZ | Puerto I | 25 | 06/07/24 | 2017 |

| Izen-abizenak | Espetxea | Espetxean zenbat urte? | Irteera data | Irteera data doktrina aplikatu ondoren |
|---|---|---|---|---|
| FRANCISCO LUJANBIO GALDEANO | Herrera | 28 | 08/02/17 | 2014 |
| JOSE RAMON MARTINEZ | Logroño | 27 | 09/01/01 | 2020 |
| JABI MARTINEZ IZAGIRRE | Jaen | 20 | 10/09/22 | 2022 |
| ITZIAR MARTINEZ SUSTATXA | Topas | 21 | 09/06/04 | 2021 |
| JESUS MARI MENDINUETA FLORES | Zuera | 21 | 11/05/04 | 2021 |
| INMACULADA NOBLE GOIKOETXEA | Algeciras | 25 | 08/11/08 | 2017 |
| PEIO ODRIOZOLA AGIRRE | Zuera | 24 | 08/07/02 | 2018 |
| IÑAKI OROTEGI OTXANDORENA | Zuera | 26 | 08/12/17 | 2016 |
| IMMA PACHO MARTIN | Málaga | 21 | 08/03/11 | 2021 |
| JUAN MANUEL PIRIZ LOPEZ | Algeciras | 28 | 09/03/01 | 2014 |
| IÑAKI PUJANA ALBERDI | Villena | 25 | 09/02/23 | 2021 |
| KEPA REZABAL ZURUTUZA | Monterroso | 25 | 06/12/30 | 2016 |
| MAITANE SAGASTUME ARRIETA | Curtis | 21 | 09/07/26 | 2021 |
| JOKIN SANCHO BIURRUN | Zuera | 23 | 09/12/08 | 2019 |
| KEPA SOLANA ARRONDO | Bonxe | 21 | 09/10/10 | 2021 |
| TXOMIN TROITIÑO ARRANZ | Curtis | 25 | 06/05/05 | 2017 |
| ANTTON TROITIÑO ARRANZ | Belmarsh | 25 | 11/02/04 | 2017 |
| MITXEL TURRIENTES RAMIREZ | Herrera | 26 | 09/04/10 | 2016 |
| JOKIN URAIN LARRAÑAGA | Herrera | 26 | 09/08/29 | 2016 |
| IÑAKI URDIAIN ZIRIZA | Valencia III | 23 | 09/10/09 | 2019 |
| JON ANDER URKIZU ORMAZABAL | Teruel | 26 | 07/07/22 | 2016 |
| MARITXU UZKUDUN ETXENAGUSIA | Granada | 21 | 09/08/27 | 2021 |
| JOSE FELIX ZABARTE JAINAGA | Puerto III | 27 | 08/04/11 | 2015 |
| GONZALO RODRIGUEZ CORDERO | Herrera | 19 | 13/07/11 | 2023 |
| IÑAKI ZUGADI GARCIA | Murcia II | 20 | 12/04/30 | 2022 |
| JUAN JOSE ZUBIETA ZUBELDIA | Monterroso | 21 | 12/04/30 | 2021 |
| JOSUNE ONAINDIA SUSAETA | Murcia II | 20 | 12/06/09 | 2022 |
| JOSU AMANTES ARNAIZ | Bonxe | 20 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| IÑAKI ARAKAMA MENDIA | Sevilla II | 15 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| SANTIAGO ARROZPIDE SARASOLA | Zuera | 25 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| JOSE MARIA BERISTAIN URBIETA | Puerto III | 23 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| OSKAR CADENAS LORENTE | Murcia II | 16 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |

| Izen-abizenak | Espetxea | Espetxean zenbat urte? | Irteera data | Irteera data doktrina aplikatu ondoren |
|---|---|---|---|---|
| JORGE GONZALEZ ENDEMAÑO | Mansilla | 17 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| MANU GONZALEZ RODRIGUEZ | Sevilla II | 23 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| UNAI PAROT NAVARRO | Puerto III | 22 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| LURDES TXURRUKA MADINABEITIA | Huelva | 18 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| JOSE JAVIER ZABALETA ELOSEGI | Zuera | 22 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| ASIER ORMAZABAL LIZEAGA | Teruel | 15 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| GERMAN RUBENACH ROIZ | Puerto III | 22 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| ALBERTO PLAZAOLA ANDOAGA | Curtis | 22 | 16/11/26 | 2026 |
| GABRIEL ZABALA ERASUN | Villabona | 19 | 13/09/27 | 2023 |

Zerrenda honetan agertzen diren 67 euskal preso politiko hauez gain, beste 18 presori ere aplikatu zaie 197/2006 doktrina. Azken 18 hauek, ordea, arrazoi ezberdinengatik, doktrinaren zigorra guztiz beteta ala bete gabe kalean aurkitzen dira egun. Beraz, kontutan hartzekoa da gure 85 senideri aplikatu dietela bizi osorako espetxe zigorra ahalbidetzen duen 197/2006 doktrina.



# ZIGORRAREN 2/3 ETA 3/4 BETETA DITUZTEN PRESOAK

Egun 143 euskal preso politikok zigorraren 2/3ak edo 3/4ak beteta izateagatik baldintzapeko askatasunari esker kalean beharko lukete, eta hala ere espetxeraturik mantentzen dituzte. Beste behin Euskal Preso Politikoei salbuespeneko neurriak ezartzen zaizkiela ikus daiteke. 143 pertsonek urteak daramatzate espetxean eta zigorraren 2/3 eta 3/4ak beteta baldintzapeko askatasunean beharko lukete, baina espetxean jarraitzen dute. Hona hemen aske beharko luketen presoen zerrenda:

## ESTATU ESPAÑOLA

1.ABAD SAN PEDRO ENDIKA
2.AGIRRE LETE JUAN LUIS
3.ALMARAZ LARRAÑAGA AGUSTIN
4.ALONSO ALVAREZ RAUL
5.ALONSO CURIECES ANUNTZI
6.ALONSO RUBIO IÑAKI
7.APARICIO BENITO JON KOLDO
8.APEZTEGIA JAKA JOXE KARLOS
9.ARANBURU MUGURUZA XABIER
10.ARISTI ETXAIDE PATXI
11.ARKAUZ ARANA JOSU
12.ARREGI ERROSTARBE JOSEBA
13.ARRIAGA ARRUABARRENA RUFINO
14.ARRIETA ISMAEL
15.ASENSIO MILLAN PAUL
16.ASKASIBAR GARITANO MIKEL
17.BALANZATEGI AGIRRE XABIER
18.BALERDI IBARGUREN XABIER
19.BALERDI ITURRALDE JUAN CARLOS
20.BEASKOA RODRIGEZ JON
21.BEAUMONT BARBERENA JOSU
22.BELLON BLANCO ARKAITZ
23.BELOKI RESA ELENA
24.BENAITO VILLAGARCIA MIGUEL A.
25.BETOLAZA VILAGRASA GORKA
26.BILBAO BEASKOETXEA IÑAKI
27.CABELLO PEREZ ANDONI
28.CAÑAS CARTON IÑAKI
29.CASTRO SARRIEGI ALFONSO
30.DORRONSORO MALAXETXEBARRIA JOSE MARIA
31.EGIGUREN ENBEITIA OLATZ
32.ERNAGA ESNOZ JOSEPA
33.ERRAZTI ELORZA JOKIN
34.ESNAL JUANTXU
35.ESTONBA ITURRIZA ARATZ
36.ETXEANDIA MEABE JOSE MIGUEL
37.ETXEBARRIA MARTIN IÑAKI
38.FAGOAGA IGANTZI IÑAKI
39.FERNANDEZ BERNALES JULEN
40.GABIOLA GOIOGANA ANDONI
41.GALARZA QUIRCE LUIS ANGEL
42.GAÑAN RAMIRO GAIZKA
43.GARAIZAR SAN MARTIN NEREA
44.GARCIA MIJANGOS JOSE
45.GARCIA RAZKIN SERGIO
46.GARCIA SERTUTXA GORKA
47.GOIENETXE ALONSO IÑAKI
48.GOMEZ LARRAÑAGA ARATZ
49.GONZALEZ RODRIGUEZ MANUEL
50.GONZALO CASAL IÑAKI
51.GRAMONT DABID
52.GUEMES OIARBIDE ITXASO
53.GUNDIN MAGUREGI PATXI
54.HIDALGO LERTXUNDI AIMAR
55.IPARRAGIRRE ARRETXEA IMANOL

56.IRASTORZA OTEGI AINHOA
57.JUARISTI ARRIETA XABIN
58.CORTA CARRION MIKEL
59.LARRINAGA MARTIN JULEN
60.LARRINAGA RODRIGUEZ ASIER
61.LASA MITXELENA JUAN LORENZO
62.LEGAZ IRURETA ARMANDO
63.LESENDE ALDEKOA TXOMIN
64.LOIZAGA LOINAZ IÑAKI
65.LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO JOSE RAMON
66.MAJARENAS IBARRETA SARA
67.MARKEZ DEL FRESNO KEPA
68.MUJIKA GARMENDIA FRANCISKO
69.OIARTZABAL UBIERNA ANARTZ
70.OLAIZ RODRIGUEZ JORJE
71.OLANO OLANO JUAN MARIA
72.ORMAZABAL GAZTAÑAGA JON MARKEL
73.OTAZUA URRESTI IÑIGO
74.PEREZ DE ANUNCITA URKIJO EDUARDO PABLO
75.PRIETO JURADO SEBASTIAN
76.ROJO GONZALEZ JUAN RAMON
77.RUIZ JASO ZIGOR
78.SADABA MERINO FRANCISCO JAVIER
79.SAEZ ARRIETA ARKAITZ
80.SALEGI GARCIA OROITZ
81.SAN EPIFANIO SAN PEDRO FELIPE
82.TAPIA ZULAIKA ASIER
83.TERRONES ARRETE JAGOBA
84.TOBALINA RODRIGUEZ JUAN
85.TODA IGLESIA TERESA
86.TXIMENO INZA XABIER
87.UGALDE ZUBIRI ANDONI
88.UGARTE VILLAR XABIER
89.URIBE NAVARRO RAMON
90.URIZAR DE PAZ GERMAN
91.URIZAR MURGOITIO JOSE GABRIEL
92.URRA GURIDI KEPA
93.VIRUMBRALES AMENABAR ASIER
94.ZABARTE ARREGI JESUS MARI
95.ZARRABE ELKOROIBIDE MIKEL
96.ZELARAIN ERRAZTI JULEN
97.ZELARAIN OIARTZABAL PEIO
98.ZIGANDA SARRATEA JOSU
99.ZUBIA URRUTIA IKER
100.ZUBIZARRETA BALBOA KEPA
101.ZULAIKA AMUTXASTEGI GORKA
102.ARREGI IMAZ XABIER
103.ASKASIBAR BARRUTIA BIXENTE
104.BEROIZ ZUBIZARRETA ANDONI
105.BRAVO MAESTROJUAN JOSU
106.COLOMA UGARTEMENDIA ASIER
107.ESKISABEL BARANDIARAN ANITZ
108.ESPARZA ORTEGA JOSEBA
109.HERNAEZ BOLINAGA AILANDE
110.GANDIAGA IBARZABAL ESTEBE
111.GAZTELU OTXANDORENA JOSE MIGUEL
112.GONZALEZ PAVON JOSEBA
113.IBARRA IZURIETA BIGARREN
114.LEJARZEGI OLABARRIETA ENDIKA
115.LIZARRALDE PALACIOS ANA
116.OLARRA AGIRIANO JOXE MARI
117.OSTOLAZA IKARAN ENEKO
118.PASCUAL MUNETA GARIKOITZ
119.SAENZ OLARRA BALBINO
120.SALUTREGI MENTXAKA JABIER
121.TRENOR DICENTA KARLOS
122.VARGAS OLASOLO MIKEL
123.ZUBIMENDI IZAZA ARAITZ
124.ZENARRUZABEITIA IRUGUENPAGATE ZALOA
125.ZUBIAGA LAZKANO XEBER

# ESTATU FRANTSESA

1.FREDERIK HARANBURU
2.INIGO ELIZEGI
3.JACKES ESNAL
4.JUAN CARLOS ESTEVEZ PAZ
5.AITOR KORTAZAR
6.MAITE JUARROS
7.JON KIRRU OTXOANTESANA
8.JON PAROT
9.IÑAKI REGO
10.BEÑAT SANSEBASTIAN.
11.PEIO ALCANTARILLA
12.MARINA BERNADO BONADA
13.MIKEL ALMANDOZ
14.MATTIN OLZOMENDI.
15.GALDER CORNAGO
16.ITXASO LEGORBURU
17.IBAI SUESKUN
18.JEAN MARIE SAINT PEE




# GERTAERA LARRIAK

## Sakabanaketak eragindako istripuak

Irailaren 15ean, Elorrioko Txomin Lesende presoaren amak, bi arrebek, eta hauetako baten 4 urteko haurrak istripu bat izan zuten, Badajozeko espetxera bisitan zihoazela. Istripua Ruta de Plata izeneko autobian gertatu zen. Lesenderen senideek kotxearen kontrola galdu zuten. Zoritxarrez autobiako erdibitzailearen zati bat falta zenez, beste noranzkoa gurutzatu zuten, eta azken momentuan lubeta baten mugan gelditu ziren.

Azkenean espetxera iristea lortu zuten. 11:00etan zuten aurrez aurreko bisita atzeratzea lortu zuten, eta 18:00etan bisita hori burutu ahal izan zuten. Zorionez senideak ondo daude. Sakabanaketa politikak 2012. urtean eragin duen hamabigarren istripua da honakoa.

## Isolamendu ta bakartzea

Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza euskal preso politikoen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Esan bezala, euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak agian isolamenduko moduluan egon ez arren bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da. Hona hemen momentu honetan Espainiako eta Frantziako espetxeetan bakarturik dauden preso politikoen zerrenda:

**Euskal Herria**

Txus Martin (Zaballa)
Gotzone Lopez de Luzuriaga (Martutene)
Jose Angel Biguri (Martutene)

**Espainiar estatua**

Oscar Zelarain (Alcala Meco)
Sara Majarenas (León)
Dani Pastor (Puerto III isolamendua) Une honetan, Navalcarneron aurkitzen da dilijentziengatik.
Manex Castro (Puerto III isolamendua)
Ibai Peña (Soto del Real)

**Frantziar estatua**

Jean Marie Saint Pee (Mont de Marsan)
Juan Carlos Estevez (Marseilles)
Marian Aramendi (Joux la Ville)
Julen Eizagirre (Joux la Ville)
Mattin Olzomendi (Uzerche)
Oier Gomez (Moulins)

Hona hemen isolamenduarekin lotuta hilabete honetan zehar eman den gertaera baten azalpena:

Cordobako hiru euskal preso politiko isolamenduan aurkitzen dira egun, beste bi euskal presoren erasotzailea eurekin jarri izana salatzegatik. Zehazki, Oskar Calabozo, Jose Mari Etxeberria "Goierri" eta Jon Urretabizkaia dira isolamenduan aurkitzen diren presoak, 75.artikuluarekin, Juan Amador Moreno preso soziala euren modulu berdinean jartzeagatik protesta egin zutelako.

Gertaera hilaren 13an eman zen. Cordobako espetxeko modulu batean aurkitzen ziren Oskar Calabozo, Jose Mari Etxeberria "Goierri" eta Jon Urretabizkaia euskal preso politikoak. Eta modulu honetara eraman zuten, jada bi euskal preso politiko erasotuak dituen, Juan Amador Moreno preso soziala. Hiru euskal presoek euren moduluan aurkitzen zela jakin zutenean, egoera hau ez zutela onartuko eta Amador Moreno beste modulu batetara eramateko protestan hasi ziren. Orduan, funtzionario mordoa etorri eta hirurak isolamendura eraman zituzten.

Luis eta Juan Amador Moreno anaiak jada hiru euskal preso eraso dituzte. Luis Amador Morenok Aitor Fresnedo erasotu zuen Villenan labankadaz 2004an eta Juan Amador Morenok ere labankadaz eraso zuen Patxi Ruiz Almerian.
Aurten, uztailaren 5ean ere, Juan Amador Morenok Aitor Liguerzana eraso zuen Foncalenten, nahiz eta modulu horretan aurkitzen ziren euskal preso politikoek lehenago ere

salatu zuten modulu horretan bizi zen tentsioa.
Amador Moreno, Foncalenteko espetxetik atera zutenean, Arkaitz Goikoetxearekin sartu zuten Navalcarneroko espetxean, isolamenduan. Orduan, ezer gertatu ez bazen ere, argi dago edozein ezbeharren bila dabiltzala.

Cordoban emandako azken gertakari honek, eta lehenago beste espetxeetan gertatutakoek kezka handia sortzen digute senideei. Etengabe gure senideen egoera zein ote den galdetzen diogu geure buruari, izan ere, espetxean egotea nahikoa zigor ez balitz bezala, gure senide eta lagunak bestelako arrisku batzuk ere bizi dituzte. Era berean, Instituciones Penitenciariasen jarrera salatu nahi dugu, gure senide eta lagunekiko horrelako jarrera duen pertsona bat etengabe gure senideekin elkartu nahi izateagatik. Honek argi adierazten du euren helburua horrelako gertakariak bilatzea dela. Jada bi euskal preso politiko eraso ditu eta gure senideetako edonor izan daiteke hurrengoa.
Eraso hauekin amaitu behar da. Euskal preso politikoen senide eta lagunek atsekabez eta beldurrez bizi ditugu horrelako egoerak, eta ezinbestekoa da egoera hauekin amaitu, eta euren eskubideak errespetatzen hastea.

## Bestelako gertaerak

### Espainiar Estatua

A lama
Elikadurak okerrera egin du.
Kiroldegira joateko aukera kendu diete.

Estremera
Irailaren 15ean, Jon Gonzalez bisitatzera joan ziren lagunei kotxea apurtu zitzaien eta ezin izan zuten bisita burutu.

Logroño
Abuztuaren 31n, Gari Paskual ziegara sartzera zihoala, tira-bira bat izan zuen funtzionarioekin eta hiru egunez isolamenduan egon behar izan zuen.

Puerto I
Elikadurak okerrera egin du.
Irailaren 15-16ko asteburuan miaketa integrala egin zieten bost presori. Madrileko agindua zela esan zieten presoei.

Puerto III
Funtzionario batekin arazoak izan dituzte: ziegetako liburuak murriztu dizkiete, aurrez aurreko bisiten ordutegia zorroztu diete, demandaderoan eros ditzaketen gauzak murriztu dizkiete...

Soria
Iñaki Loizagak ez du bisitetarako lagunen zerrenda jaso ekainetik. Zergatia galdetutakoan Madrileko arazoa dela esaten diote.

Topas
Irailaren 16an, Unai Hernandezen lagun bat bera bisitatzera joan zen. Bisita hasi eta 15 minutura funtzionarioak agertu ziren komunikazioa moztera "segurtasun arrazoiak" zirela eta.

## Frantziar estatua

Fleury
Irailaren 1ean, Iurgi Mendinueta presoaren senideak bera bisitatzera joan ziren. Trenez joan ziren Parisera, eta Fleuryra joateko taxia hartu zuten, baina taxia atzeratu zenez, 10 minutu edo ordu laurden beranduago iritsi zen. Ez zieten bisitan sartzen utzi.

Liancourt
Deiak onartu dizkie preso prebentiboei.

## Mexiko

Abuztuaren 28an, Mexikoko Auzitegi batek, legez kanpokotzat jo zuen, 2011ko maiatzaren 20an, Luis Miguel Ipiña euskal iheslari politiko donostiarraren atxiloketan burutu zen miaketa.

Luis Miguel Ipiñaren aurka, Mexikon, ikerketa penal bat martxan dago, ustez bere etxean zegoen arma bat dela eta. Konkretuki, Mexikoko Kode Penalean arautua dagoen delitu bat egozten zaio: Ejertzitoak soilik izan dezake suzko arma bat.

Mexikoko Auzitegi Penal batek, miaketaren aurka Leonel Rivero abokatuak tarteratu zuen helegitea ontzat eman du eta legez kanpokotzat jo du bertan eginiko miaketa. Honela, Luis Miguel Ipiñaren aurka dagoen froga bakarra -arma bere etxean topatu izana- bertan behera geratu da. Fiskaltzak irailak 13 arteko epea du erabaki hau helegiteko.
Erabaki hau bigarren instantzian berresten bada, auzia bertan behera geratuko litzateke eta Luis Miguel Ipiña aske geratuko zen.

Luis Miguel Ipiñak, behin eta berriz, ukatu du arma hori berea zenik, eta bestelako arrazoi ilunei egotzi die bere etxean arma hori kokatu izana.

Ondo bidean, Ipiña aske geratzeko aukerak zabal zabalik daude. Oroitu behar dugu, Mexikoko espetxe oso gogor batean dagoela preso, baldintza oso kaxkarretan. Osasun zerbitzu eskasarekin, zeharo masifikatua dagoen kartzela batean dute Ipiña. Ondorioz, pisu asko galdu duelarik.



# Askatasunak, espetxeratzeak eta lekualdatzeak

## Askatasunak

**Xabier Atristan** (Hernani), irailaren 11n. 2000 euroko bermea ordainduta, behin-behinean.
**Arturo Villanueva** (Iruñea), irailaren 11n. Euro Agindu epaiketaren zain.
**Peio Alcantarilla** (Urruña), irailaren 21ean.
**Iñaki Rego** (Urruña), irailaren 26an.

## Espetxeratzeak

**Imanol Gonzalez** (Balmaseda), irailaren 18an. Soto del Realen espetxeratu dute.
**Jon Igor Urresti Osa** (Ondarru), irailaren 19an. Soto del Realen espetxeratu dute.

## Lekualdatzeak

### DESTINU ALDAKETAK

**Frantziar estatua**

**Juan Carlos Estevez:** Toulon-etik Marseilles-era.

### DILIJENTZIAK

**Espainiar estatua**

**Iratxe Yañez:** Almeria-tik Soto del Real-era.
**Xabier Garcia:** Puerto III-tik Navalcarnero-ra.
**Jon Solana:** Cordoba-tik Navalcarnero-ra.
**Mikel Egibar:** Zuera-tik Zaballa-ra.

**Frantziar estatua**

**Jon Etxeberria:** Liancourt-etik Pariseko ospitale batera.